# Urtean Zeharreko XXII. astelehena
## I. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Jesusegaz bat eginik hil diranak*
*Jainkoak beragaz hartuko ditu.*

San Paulo Apostoluak Tesalonikarrei egindako lehenengo epistolatik

*1 Ts* 4, 13-18

Senideok: Ez dogu nahi hildakoen zoriaz zuek ezjakinean egoterik, atsekabetu ez zaitezen, itxaropenik ez dabenen antzera. Jesus hil eta biztu zala benetan sinisten badogu, Jesusegaz bat eginik hil diranak be Jainkoak beragaz hartuko ditu.

Hau dinotsuegu Jaunaren hitzean oinarrituta: guk, Jauna etortzean bizirik izango garanok, ez deutsegu hil diranei aurrea hartuko. Izan be, goiaingeruaren oihuz eta Jainkoaren turuta-hotsez seinalea emonik, Jauna bera jatsiko da-eta zerutik, eta lehenengo, Kristogaz bat eginik hildakoak biztuko dira; gero gu, artean bizirik izango garanok, hareekin batera eroango gaitue hodeietan, airean, Jaunagaz alkartzera. Eta holan, beti Jaunagaz egongo gara. Adoretu egizue, beraz, alkar berba

honeekin.
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 96 [95], 1 eta 3. 4-5. 11-12. 13 (R/. 13b)

R/. **Badator Jauna lurra epaitzera.**

V/. Kanta Jaunari kantu barria,
kanta Jaunari, lur osoa,
zabaldu haren ospea nazinoetan,
haren mirariak herri guztietan. R/.

V/. Handia da-eta Jauna, guztiz goresgarria,
jainko guztien aldean bildurgarria.
Ez dira ezer atzerritarren jainko guztiak;
Jaunak, ostera, zeruak egin ditu. R/.

V/. Poztu bedi zerua, alaitu lurra,
egin begi orroe itsasoak eta bertako guztiak,
egin jai landa zabalak eta bertan dan guztiak,
egin poz-oihu, basoko zuhaitz guztiok. R/.

V/. Jaunaren aurrean, badator-eta,
badator lurra epaitzera.
Justiziaz epaituko dau mundua
eta leialtasunez herriak. R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Jesu Kristo kurutzeratua iragarri neutsuen.*

San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako lehenengo epistolatik

*1 Ko* 2, 1-5

Senideok: Niri dagokidanez, Jainkoaren salbazino-asmoa iragartzera joan nintxatzuenean, ez neutsuen hitz egin giza jakituriazko hizkera landua erabiliz. Izan be, zuen artean ez neban ezer jakin nahi izan Jesu Kristo, eta berau kurutzeratua, izan ezik.

Horregaitik, ahul eta bildurrez dardar agertu nintzan zuen aurrean. Nire hitza eta predikua ez ziran giza jakituriazko argudiotan oinarritu, Espirituaren indarrean baino, holan, zuen sinismena Jainkoaren indarrean oinarritu eiten eta ez giza jakiturian.

Jaunak esana.

### Erantzun salmoa

*Sal* 119 [118], 97-98. 99-100. 101-102 (R/. ik. 97a)

R/. **Bai maite dodala, Jauna, zure legea!**

V/. Bai maite dodala, Jauna, zure nahia;
hausnargai dot egun osoan.
Zure aginduak arerioak baino

zuhurrago nau egiten,
neugaz dot-eta beti. R/.
V/. Nire irakasle guztiak baino argiago naz,
zure aginduak ditut-eta hausnartzen.
Zaharrak baino trebeago naz ulertzen,
zure legeak ditut-eta betetzen. R/.
V/. Bide txar guztitik aldentzen ditut oinak,
zure hitza gordetzearren.
Ez naz zure erabagietatik aldentzen,
Zeuk deustazu-eta irakasten. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

Ik. *Lk* 4, 18

R/. **Aleluia.**
V/. Jaunaren Espiritua nire gainean dago,
behartsuei Barri Ona emotera bialdu nau. R/.

### EBANJELIOA

*Behartsuei Barri Ona emotera bialdu nau Jaunak.*
*Ez da profetarik bere herrian onartua danik.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 4, 16-30

Aldi haretan, Jesus Nazaretera, bera hazitako herrira, joan zan, eta zapatuan sinagogan sartu, ohi ebanez, eta zutunik jarri zan irakurgaia egiteko.

Isaias profetaren liburua emon eutsoen eta, edegitzean, pasarte hauxe aurkitu eban:

«Jaunaren Espiritua nire gainean dago,
ze, berak gantzutu nau,
behartsuei Barri Ona emoteko.
Giltzapekoei askatasuna
eta itsuei ikusmena iragartzera bialdu nau,
zapalduei askatasuna emotera,
Jaunaren grazia-urtea iragartzera».

Liburua batu ostean, laguntzaileari emon eta jesarri egin zan. Danak sinagogan begira-begira eukazan.

Jesus holan hasi jaken: «Gaur bete da orain entzun dozuen Liburu Santuko berba hau». Guztiek Jesusen alde berba egiten eben eta harrituta egozan Jainkoaren onginahiaz esaten zituanakaitik. Baina hau inoean: «Ez al da, ba, hau Joseren semea?»

Orduan, Jesusek esan eutsen: «Harako esaera ha gogoratu eragingo deustazue, hurrean: “Sendagile, osatu zeure burua”, eta esango: “Egizuz hemen be, zeure herrian, Kafarnaumen

egin ei dituzun gauzak”».

Eta gehitu eban: «Hara bene-benetan dinotsuet: Ez da profetarik bere herrian onartua danik. Benetan dinotsuet: Bazan emakume alargunik asko Israelen Eliasen sasoian, hiru urte eta sei hilabetez euria egin barik egonik, lurralde guztian gosete gorria izan zanean; halan be, Jainkoak ez eutson hareetako inori bialdu Elias, Sidon herrialdeko Sareptako alargunari baino. Eta bazan legenardunik asko Israelen Eliseo profetaren sasoian; halanda guzti be, ez zan hareetako inor osatu, Siriako Naaman baino».

Honeek entzutean, sinagogan egozan guztiak amorruz bete ziran. Eta jagirik, Jesus herritik kanpora atara eta herria jasota egoan mendiko trokara eroan eben, handik behera botatzeko asmotan. Baina Jesus hareen erditik igaro eta bere bidetik joan zan.

Jaunak esana.

2

# Urtean Zeharreko XXII. martitzena

## I. urtean

### I. Irakurgaia

*Gugaitik hil zan,*
*gu haregaz bat eginik bizi gaitezan.*

San Paulo Apostoluak Tesalonikarrei egindako lehenengo epistolatik

*1 Ts* 5, 1-6. 9-11

Senideok: Jaunaren etorrera noiz eta zelan izango dan ez dozue nik idatzi beharrik; zeuek dakizue nahiko ondo Jaunaren eguna lapurra gauez lez etorriko dana.

«Bakea eta nasaitasuna» esaten dihardueneane, orduan uste barik etorriko jake hondamendia gainera, umedun dagoanari erdiminak lez, eta ez dabe ihes egiterik izango. Zuek, ostera, senideok, ez zarie ilunpean bizi, egun horrek lapurrak lez harrapatzeko zorian; danok argiaren eta egunaren seme-alaba zarie. Ez gara gauarenak, ez ilunarenak. Beraz, ez daigun lorik egin besteek lez; egon gaitezan zuhur, eta izan gaitezan neurritsu.

Izan be, Jainkoak ez dau guk beraren hasarre-zigorra jasatea nahi, Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez salbazinoa lortzea baino. Jesu Kristo gugaitik hil zan, gu, nahiz iratzarrik nahiz lo, haregaz bat eginik bizi gaitezan. Holan, bada, emon adore alkarri eta lagundu

batak besteari, egiten dozuen lez.
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 27 [26], 1. 4. 13-14 (R/. ik. 13)

R/. **Jaunaren ontasuna ikusi ustean nago**
**bizidunen lurrean.**

V/. Jauna dot argi eta salbazino,
nork ni bildurtu?
Jauna biziaren babes,
nork ni izutu? R/.

V/. Gauza bat eskatzen deutsat Jaunari,
horren bila nabil ni:
bizi nadila Jaunaren etxean
neure bizitzako egun guztietan,
Jaunaren edertasuna miretsiz
eta haren tenplua zainduz. R/.

V/. Ziur dakit Jaunaren ontasuna gozatuko dodala
bizidunen lurrean.
Itxaron Jaunagan!
Eutsi gogor, izan bihotz!
Itxaron Jaunagan! R/.

## II. urtean

## I. Irakurgaia

*Giza maila hutsez, gizakiak ez dau onartzen*

*Jainkoaren Espirituari dagokiona;*
*Espiritua dauanak dana juzgatzen dau.*

San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako lehenengo epistolatik

*1 Ko* 2, 10b-16

Senideok: Espirituak dana aztertzen dau, baita Jainkoaren barru-barrua be. Nork ezagutu leike gizakiaren barrua, beragan dauan giza espirituak baino? Era berean, inork ezin leike Jainkoaren barrua ezagutu, Jainkoaren Espirituak izan ezik. Eta guk ez dogu munduaren espiritua hartu, Jainkoagandik datorrena baino; honan, Jainkoak emon deuskuzan dohaiak ezagutu geinkez. Gauza honeetaz ez dogu berba egiten giza jakituriak irakatsitako hizkeraz, Espirituak irakatsitakoaz baino, Espirituaren gauzak Espiritua hartu daben gizon-emakumeei adierazoz.

Giza maila hutsez, gizakiak ez dau onartzen Jainkoaren Espirituari dagokiona; ez dau zentzunik berarentzat eta ezin dau ulertu, Espirituaren argitan bakarrik aztertu leiteke-eta. Espiritua dauanak dana juzgatzen dau; bera, ostera, ezin leike inork juzgatu. Izan be, «nork ezagutu dau Jaunaren pentsakerea? Nork

irakatsi leikio?» Guk, halan be, Kristoren pentsakerea dogu.
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 145 [144], 8-9. 10-11. 12-13b. 13c-14 (R/. 17a)

R/. **Zintzoa da Jauna bere bide guztietan.**

V/. Errukiorra eta bihozbera da Jauna,
hasarregatxa eta onginahiz betea.
Ona da Jauna guztientzat,
errukiz betea bere sorkari guztientzat. R/.

V/. Goratu zagiezala, Jauna, zeure sorkari guztiek,
bedeinkatu zeure fededunek;
aitatu begie zure erregetza ospetsua,
hitz egin begie zure ahalmenaz. R/.

V/. Gizakiei agertuz zure egite ahaltsuak,
zure erregetza ospetsuaren bikaintasuna.
Zure erregetza betiko erregetza,
gizaldiz gizaldikoa zure nagusitza. R/.

V/. Fidagarria da Jauna bere hitz guztietan,
leiala bere egintza guztietan.
Jaunak eusten deutse jausteko zorian dagozanei,
eta jasotzen ditu lur joak. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

*Lk* 7, 16

R/. **Aleluia.**

V/. Profeta handia sortu da gure artean,
eta Jainkoa bere herria salbatzera etorri da. R/.

EBANJELIOA

*Bajakiat nor hazen: Jainkoaren Santua.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 4, 31-37

Aldi haretan, Jesus Galileako Kafarnaum urira jatsi zan, eta zapatuetan jenteari irakasten eutson. Harriturik egoan jentea haren irakaspenaz, ze, nagusitasunez berba egiten eban. Bazan sinagogan espiritu gaiztoaren menpe egoan gizon bat, eta oihu bizian hauxe inoan: «Zer dok gurekin, Jesus Nazaretarra? Gu hondatzera ete hator? Bajakiat nor hazen: Jainkoaren Santua».

Jesusek gogor eraso eutson: «Isildu hadi eta urten gizon horrengandik!» Deabruak jente artean lurrera bota

eban gizona, baina bapere kalterik egin barik urten eban harengandik.

Ikaratuta gelditu ziran danak, alkarri itaunka: «Zer da hau? Nagusitasunez eta indarrez agintzen deutse espiritu txarrei, eta honeek urten egiten dabe».

Jesusen entzutea herrialde haretako bazter guztietara zabaldu zan.

Jaunak esana.

______________________________________________3

# Urtean Zeharreko XXII. eguaztena

## I. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Zuekana heldu da Barri Ona,*
*eta lur osora.*

San Paulo Apostoluak Kolosarrei egindako epistolaren hasiera

*Kol* 1, 1-8

Nik, Paulok, Jainkoak halan nahirik, Kristo Jesusen apostolu nazan honek, eta Timoteo anaiak, Kolosan bizi zarien kristau fededun eta senide leialoi: grazia eta bakea zuei Jainko gure Aitagandik.

Zuen alde otoitz egitean eskerrak emoten deutsaguz eten barik Jainkoari, Jesu Kristo gure Jaunaren Aitari, jakin

dogulako zelan sinisten dozuen Kristo Jesusengan eta zelan maite dozuezan fededun guztiak. Jainkoak zuentzat zeruan prestatuta dauan sariaren itxaropenak eragiten deutsue horretara, hau da, Barri Ona, egiaren mezua, zuekana heldu zanean ezagutu zenduen itxaropenak. Barri Ona dan mezuak, Jainkoaren onginahiaren barri izan eta benetan ezagutu zenduen egun beretik dihardu zuen artean hazten eta frutu emoten, mundu osoan dihardua lez. Epafras gure lankide maiteak eta zuentzat Kristoren zerbitzari leial danak irakatsi eutsuen holan. Harek jakinazo deusku zelako maitasuna sortzen dauan zuengan Espirituak.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 52 [51], 10. 11 (R/. 10b)

R/. **Jauna, zure maitasunean dot konfiantza betiko.**

V/. Ni Jainkoaren etxean olibondo hezearen antzeko,
Jainkoaren maitasunean dot konfiantza betiko. R/.

V/. Beti goratuko zaitut egin dozunagaitik,

zure izenean dot itxarongo,
fededunentzat hain ona zaralako. R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Gu Jainkoaren lankideak gara;*
*zuek, barriz, Jainkoak lantzen dauan soloa,*
*Jainkoak eraikitzen dauan etxea.*

San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako lehenengo epistolatik

*1 Ko* 3, 1-9

Senideok: Nik ezin izan neutsuen hitz egin Espiritua dabenei lez, heldubakoei lez baino, kristau izatean umetxu diranei lez. Esnez hazi zinduedazan, ez janari sendoz, hau hartzeko ez zinien-eta artean gauza. Oraindino be ez zarie gauza, giza grinen menpeko izaten jarraitzen dozue-eta. Izan be, bekaizkeriak eta eztabaidak dozuezan bitartean, ez ete zarie giza grinen menpeko? Ez ete dozue giza eretxi hutsez jokatzen?

«Ni Paulorena naz, ni Apolorena» dinozuenean, ez ete dozue giza eretxi hutsez jarduten? Azken baten, zer da Apolo? Eta zer Paulo? Zuek sinismenera ekarri zaitueen Jainkoaren zerbitzari besterik ez, bakotxa Jaunak emon

deutson egitekoaren arabera. Landatu, nik landatu neban; ureztatu Apolok; baina hazi, Jainkoak haziazo eban. Landatzen dauana eta ureztatzen dauana ezer gitxi dira; ardurea dauana Jainkoa da, haziazoten dauana. Landatzen dauana eta ureztatzen dauana, biak parekoak dira, bakotxak saria bere lanaren arabera jasoko badau be. Gu Jainkoaren lankideak gara; zuek, barriz, Jainkoak lantzen dauan soloa, Jainkoak eraikitzen dauan etxea.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 33 [32], 12-13. 14-15. 20-21 (R/. ik. 12b)

R/. **Bai dohatsu Jaunak bere oinorde aukeratu dauan herria.**

V/. Zorionekoa, Jauna Jainko dauan nazinoa,
harek bere ondaretzat aukeratu dauan herria.
Jaunak zerutik begiratzen dau,
ikusten ditu gizaki guztiak. R/.

V/. Bere bizilekutik jarriak ditu begiak
munduko biztanle guztien gainean,

berak egin dau-eta danen bihotza,
eta adi dago hareen egintza guztiei. R/.

V/. Guk Jaunagan dogu esperantza,
bera dogu laguntzaile eta babesle.
Harengan pozten da gure bihotza,
haren izen santuan dogu konfiantza. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

Ik. *Lk* 4, 18

R/. **Aleluia.**

V/. Behartsuei Barri Ona emotera bialdu nau Jaunak,
katiguei askatasuna iragartzera. R/.

**EBANJELIOA**

*Gainerako herrietan be adierazo behar dot*
*Jainkoaren erreinuaren Barri Ona,*
*horretara bialdu nau-eta Jainkoak.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 4, 38-44

Aldi haretan, Jesus sinagogaitik urten eta Simonen etxean sartu zan. Simonen amaginarreba sukar handiaz egoan, eta haren alde zeozer egiteko eskatu eutsoen.

Orduan, harengana makurturik, zorrotz agindu eutson sukarrari, eta

sukarrak alde egin eutson. Behingoan jagi eta zerbitzen hasi jaken amaginarreba.

Eguzkia sartu zanean, gaixoak ebezan guztiek, euren gatxa edozein izanda be, Jesusi eroaten eutsoezan, eta harek, bakotxari eskuak ezarriz, osatu egiten zituan.

Askorengandik deabruak be urteten eben, deiadarka esanez: «Zu Jainkoaren Semea zara!» Jesusek zorrotz galazoten eutsen berba egitea, baekien-eta Mesias zana.

Eguna argitu orduko, urten eta bazter bakarti batera joan zan. Jentea haren bila ebilen eta, aurkiturik, eutsi egin gura eutsoen, alde egin ez egien. Baina Jesusek esan eutsen: «Gainerako herrietan be adierazo beharra dot Jainkoaren erreinuaren Barri Ona, ze, horrexetara bialdu nau Jainkoak».

Eta Judeako sinagogetan ibili zan Barri Ona iragartzen.

Jaunak esana.

4

---

# Urtean Zeharreko XXII. eguena

## I. urtean

## I. IRAKURGAIA

*Berak atara gaitu ilunpearen menpetik eta bere Seme maitearen erreinura aldatu.*

San Paulo Apostoluak Kolosarrei egindako epistolatik

*Kol* 1, 9-14

Senideok: Zuen jokabidearen barri izan genduanetik, eten barik dihardugu zuen alde otoitzean. Jainkoari eskatzen deutsagu, jakituria osoz eta Espirituak emoten dauan ulermenaz jantzirik, Jainkoaren nahia bete-betean ezagutu dagizuela. Holan, Jaunak nahi dauan eran biziko zarie, atsegin dauan guztia eginez, era guztietako egintza onak frututzat emonez eta Jainkoa gero eta hobeto ezagutuz.

Haren ahalmen aintzatsuak indartzen zaitue, dana jasateko iraupena eta pazientzia izan dagizuen eta, pozez beterik, eskerrak emon deiozuezan Aitari, argiaren erreinuan bere herri santuarentzat prestaturik dituan ondasunetan parte izateko gai egin zaituenari. Berak atara gaitu ilunpearen menpetik eta bere Seme maitearen erreinura aldatu; honengan dogu askapena, honengan pekatuen parkamena.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 98 [97], 2-3b. 3c-4. 5-6 (R/. 2a)

R/. **Bere garaipena ezagutuazo dau Jaunak.**

V/. Bere garaipena ezagutuazo dau Jaunak,
bere salbazino-egintza agertu nazinoen aurrean.
Ez da ahaztu bere maitasunaz,
Israel herriari deutson leialtasunaz. R/.

V/. Munduko bazter guztiek ikusi dabe
gure Jainkoaren garaipena.
Egin irrintzi Jaunari, lur osoa,
egin poz-oihu eta kantu, jo soinua. R/.

V/. Ospatu Jauna zitaraz,
zitaraz eta kantu-hotsez,
turutaz eta adar-hotsez;
egin irrintzi errege dan Jaunari. R/.

# II. urtean

## I. Irakurgaia

*Guztia zuena da. Zuek, ostera, Kristorenak zarie, eta Kristo Jainkoarena.*

San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako lehenengo epistolatik

*1 Ko* 3, 18-23

Senideok: Ez begi inork bere burua engainatu. Zuetako norbaitek mundu

honen arabera jakintsu dala uste badau, egin bedi zoro, benetan jakintsu izateko. Izan be, mundu honetako jakituria zorakeria da Jainkoaren aurrean, Liburu Santuak dinoan lez: «Jakintsuak euren maltzurkerian harrapatzen ditu Jainkoak». Eta beste hau be badino: «Badaki Jaunak jakintsuen asmoak huskeria dirana».

Beraz, ez bedi inor gizakiez harrotu, dana zeuena da-eta: Paulo, Apolo, Pedro, mundua, bizitza, heriotza, oraina eta geroa; guztia zeuena da. Zuek, ostera, Kristorenak zarie, eta Kristo Jainkoarena.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 24 [23], 1-2. 3-4b. 5-6 (R/. 1)

R/. **Jaunarena da lurra, eta lurra betetzen dauana.**

V/. Jaunarena da lurra, eta lurra betetzen dauana,
mundua eta bertan bizi diranak,
harek ezarri dau-eta itsasoen gainean,
harek finkatu lur azpiko ibaien gainean.
R/.

V/. Jaunaren mendira nork igongo?

Haren toki santuan nor egongo?
Eskuak errubako eta bihotza garbi dituana,
sasijainkoetara jotzen ez dauana. R/.
V/. Holakoa bedeinkatuko dau Jaunak,
justizia egingo deutso Jainko salbatzaileak.
Hau da haren bila ahalegintzen dan gizaldia,
Jakoben Jainkoaren aurpegi bila dabilena. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

*Mt* 4, 19

R/. **Aleluia.**
V/. Zatoze Nigaz, dino Jaunak,
eta giza arrantzale egingo zaituet. R/.

## EBANJELIOA

*Dana itzirik, jarraitu egin eutsoen.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 5, 1-11

Aldi haretan, jentea gainera etorkion Jesusi, Jainkoaren hitza entzuteko; Genesaret laku-ertzean egoan Jesus. Txalupa bi ikusi zituan ur-bazterrean geldi; arrantzaleak, ontzietatik jatsita,

sareak garbitzen ebiltzan. Igon eban txalupa hareetako batera, Simonenera, eta lehorretik apur bat aldentzeko eskatu eutson. Gero, jesarri eta txalupatik jenteari irakasten jardun eban.

Berbaldia amaitzean, esan eutson Simoni: «Jo itsaso zabalera eta bota sareak arrantzurako». Simonek erantzun eutson: «Maisu, gau osoan eginahalak egin eta ez dogu ezer harrapatu; halan be, Zeuk dinozun ezkero, bota egingo dodaz sareak». Halan egin eben eta, hainbesteko arrain-piloa harrapatu eben ze, sareak lehertzeko zorian egozan. Beste txalupako lagunei keinu egin eutsien laguntzera etortzeko; etorri ziran, eta txalupa biak bete ebezan, ia-ia hondoratzeraino.

Gertatua ikusirik, Jesusen oinetan ahuspeztu zan Simon Pedro, esanez: «Alde nigandik, Jauna, pekataria naz-eta». Egon be, zur eta lur egozan Simon eta harekin ziran guztiak, egineko arrantzuagaitik, eta gauza bera gertatzen jaken Simonen arrantzu-lagun ziran Zebedeoren seme

Santiagori eta Joani be. Baina Jesusek esan eutson Simoni: «Ez bildurrik izan, hemendik aurrera giza arrantzale izango zara».

Hareek txalupak lehorrera atara zituen eta, dan-dana itzirik, jarraitu egin eutsoen.

Jaunak esana.

______________________________________5

# Urtean Zeharreko XXII. barikua

## I. urtean

**I. IRAKURGAIA**

*Gauza guztiak beraren bidez*
*eta berarentzat dira eginak.*

San Paulo Apostoluak Kolosarrei egindako epistolatik

*Kol* 1, 15-20

Jainko ikusezinaren irudi da Kristo,
sorkari guztietan lehen-sortua.
Beraren bidez sortu ebazan Jainkoak
zeru-lurretan diran gauza guztiak,
agiri diranak eta ez diranak:
munduan eragina daben ahalmenak,
nagusitzak, aginteak eta podereak;
sortua izan dan guztiak Kristo dau eredu eta helburu.

Gauza guztiak baino lehenago da ha,
eta berari esker diraue.
Ha da gorputzaren buru, Eleizearena, hain zuzen.
Bera da hasierea, hildakoen artetik lehen-biztua,
gauza guztietan bera izan dadin lehenengoa;
Jainkoak nahi izan dau-eta
bere izaeraren betea Kristogan egotea,
eta honen bidez gauza guztiak beragaz adiskidetzea,
Kristok kurutzean isuritako odolaz bakeak eginez
zeruko eta lurreko gauza guztiekin.
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 100 [99], 2. 3. 4. 5 (R/. 2c)

R/. **Sartu zaiteze oihu alaiz Jaunaren aurrera.**

V/. Lurtar guztiok, egin irrintzi Jaunari,
zerbidu egizue Jauna pozaren pozez,
sartu zaiteze oihu alaiz haren aurrera. R/.

V/. Jakizue Jauna dala Jainkoa,
harek egin gaitu, berarenak gara,
haren herri eta haren larreko artalde.

R/.

V/. Sartu haren tenpluko ateetatik eskerrak emonez,
haren atarietan gorazarreak abestuz.
Emon eskerrak, bedeinkatu haren izena. R/.

V/. «Ona da-eta Jauna,
haren maitasuna betikoa,
haren leialtasuna gizaldiz gizaldikoa». R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Jaunak agertuko ditu bihotzeko asmoak.*

San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako lehenengo epistolatik

*1 Ko* 4, 1-5

Senideok: Hartu gagiezala guztiek Kristoren zerbitzaritzat eta Jainkoaren misterioen administratzailetzat. Eta administratzaileari leiala izatea eskatzen jako.

Niri dagokidanez, ez deust bat be ardura zuek edo edozein giza auzitegik ni epaitzeak. Neuk be ez dot epaitzen neure burua. Egia da kontzientziak ez nauala ezertan salatzen; baina horrek ez dau esan gura neure burua

errubakotzat jotzen dodanik, Jaunak nau-eta epaitzen.

Ez dagizuela, beraz, ordua baino lehen epaitu. Itxaron Jauna etorri arte. Harek argituko dau ilunpean ezkutaturik dagoana, harek agertuko bihotzeko asmo gordeak. Eta, orduan, bakotxak merezi dauana jasoko dau Jainkoagandik.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 37 [36], 3-4. 5-6. 27-28. 39-40 (R/. 39a)

R/. **Jaunagandik dator zintzoen salbamena.**

V/. Izan konfiantza Jaunagan eta egin on dana,
bizi lurraldean eta zaindu leialtasuna.
Izan bedi Jauna zure atsegina,
eta emongo deutsu zure bihotzak eskatzen dauana. R/.

V/. Itzi Jaunaren esku zeure zoria,
izan konfiantza harengan, berak ekinean jardungo dau-eta.
Goiz-argiak lez egingo dau distira zure zuzentasunak,
eguerdiko eguzkiak lez zure zuzenbideak. R/.

V/. Alde gatxetik, egin on dana,
eta beti izango dozu non bizia;
zuzenbidea maite dau-eta Jaunak
eta ez ditu bertan behera izten bere fededunak. R/.

V/. Jaunagandik dator zintzoen salbazinoa,
bera dabe gotorlekua arrisku-sasoian;
Jaunak lagundu eta onik ataratzen ditu,
gaiztoakandik onik atara eta salbatzen,
harengan babesten dira-eta. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

Ik. *Jn* 8, 12

R/. **Aleluia.**

V/. Neu naz munduaren argia, dino Jaunak;
Niri jarraitzen deustanak izango dau bizirako argia. R/.

## EBANJELIOA

*Etorriko jake senar barria kenduko deutsien eguna;*
*orduan, egun haretan, egingo dabe barau.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 5, 33-39

Aldi haretan, Fariseuek eta lege-maisuek esan eutsoen Jesusi: «Joanen ikasleek sarri egiten dabe barau eta otoitz, baita fariseuen ikasleek be;

zureak, ostera, jan eta edan dihardue».

Jesusek erantzun eutsen: «Zelan gura dozue ezteguetara deituek barau egitea, senar barria eurekin eukita? Etorriko jake, bai, senar barria kenduko deutsien eguna; orduan, egun haretan, egingo dabe barau».

Parabola hau be esan eutsen: «Inork ez dau jantzi barririk urratzen, zaharrarari adabua ipintzeko; osterantzean, jantzi barria hondatu egingo litzateke, eta zaharrarari ez litxakio barriaren adabua egoki etorriko.

Ez dau inork sartzen ardao barririk be zahagi zaharretan; ardao barriak zahagiak lehertu egingo leukez; ardaoa isuri egingo litzateke eta zahagiak galdu. Ardao barria zahagi barrietan sartu behar da. Ardao zaharrarekin ohituta dagoanak ez dau barririk gura, ze, “zaharra hobea dok” esaten dau».

Jaunak esana.

6

---

## Urtean Zeharreko XXII. zapatua

### I. urtean

**I. Irakurgaia**

*Beragaz adiskidetu zaitue Jainkoak,*
*beraren aurrean santu eta errubako agertu zaitezen.*
*San Paulo Apostoluak Kolosarrei egindako epistolatik*
*Kol* 1, 21-23

Senideok: Zuek, sasoi baten, Jainkoagandik urrun zengozen eta haren arerio zinien zeuen egintza txarrakaitik. Baina orain, Kristok bere gorputz hilkorrean jasandako heriotzari esker, beragaz adiskidetu zaitue Jainkoak, beraren aurrean santu, errubako eta akats barik agertu zaitezen. Horretarako, ostera, fedean sendo oinarrituak eta entzun dozuen Barri Onari esker dozuen itxaropenean ondo finkatuak iraun behar dozue. Barri On hori zerupeko izaki guztiei iragarri jake, eta ni, Paulo, Barri On horren zerbitzari egin nau Jainkoak.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 54 [53], 3-4. 6 eta 8 (R/. 6a)

R/. **Nik Jainkoa dot laguntzaile.**

V/. Ene Jainko, salbatu nagizu zeure izenagaitik,
defendatu nire auzia zeure ahalmenaz.
Entzun, ene Jainko, nire otoitza,

makurtu belarria nire ahoko hitzetara. R/.

V/. Baina nik Jainkoa dot laguntzaile,
Sakrifizioak eskeiniko deutsudaz bihotz-bihotzez,
zure izena goratuko, Jauna, ona zaralako. R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Gosez, egarriz eta biluzik ibili gara.*

San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako lehenengo epistolatik

*1 Ko* 4, 6b-15

Senideok: Ikasi egizue nigandik eta Apologandik, inor ez dadin batengaitik harrotu bestearen kontra. Nork egiten zaitu zu besteak baino gehiago? Zer daukazu hartu ez dozunik? Eta daukazuna hartua badozu, zergaitik harrotzen zara, hartua ez bazendu lez? Asebeteak ei zagoze, aberastuak. Gu behar izan barik errege izatera heldu ei zarie. Nahiago neuke egia balitz, gu be zuekin batera errege izan geintezan!

Nire eretxiz, Jainkoak azken tokian jarri gaitu gu, apostoluok, heriotzara kondenatuak lez; ikuskizun bihurtu

gaitu mundu guztiarentzat, bai aingeruentzat eta bai gizakientzat. Gu zoroak Kristogaitik; zuek, barriz, kristau zentzundunak; gu ahulak, zuek indartsuak; zuek izen handikoak, gu gitxietsiak. Orain arte hor ibili gara gosez eta egarriz, biluzik eta matrailekoak hartuz; ez daukagu nora batu, eta leher egiteraino gabiltz lanean geure eskuz. Irain egiten deuskue, eta guk bedeinkatu; erasoka erabiltzen gaitue, eta guk eroan; guri txarto-esaka dihardue, eta guk gozo erantzun; orain arte, munduko zaborra lez izan gara, danen hondakin.

Hau idaztean, ez zaituet lotsatuazo nahi, ohartuazo baino, seme-alaba maite zaituedan ezkero. Izan be, kristau lez badozue irakaslerik franko, ez ostera aitarik asko. Kristau lez, neuk sortu zinduedazan Barri Onaren bidez.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 145 [144], 17-18. 19-20. 21 (R/. 18a)

R/. **Hurrean dago Jauna dei egiten deutsoenengandik.**

V/. Zintzoa da Jauna bere bide guztietan,

leiala egintza guztietan.
Hurrean dago Jauna dei egiten deutsoenengandik,
benetan dei egiten deutsoen guztiengandik. R/.
V/. Begirune deutsoenen nahia betetzen dau,
hareen oihua entzun eta salbatu egiten ditu.
Maite daben guztiak gordetzen ditu Jaunak
eta gaizto guztiak hondatzen. R/.
V/. Goratu begi nire ahoak Jauna,
eta bedeinkatu begie izaki guztiek
haren izen santua betiren beti. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

*Jn* 14, 6

R/. **Aleluia.**
V/. Neu naz bidea, egia eta bizia, dino Jaunak;
ezin da inor Aitagana joan,
neure bidez izan ezik. R/.

### EBANJELIOA

*Zelan diharduzue zapatuz zilegi ez dana egiten?*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen

liburutik

*Lk* 6, 1-5

Behin baten, zapatuz gari-soloetan zehar joian Jesus. Eta ikasleak galburuak ebagi, eskuetan garandu eta jaten ziharduen.

Fariseu batzuek esan eutsien: «Zelan zabiltze zapatuz bidezko ez dana egiten?»

Jesusek erantzun eutsen: «Ez ete dozue irakurri Davidek egin ebana, bera eta beraren lagunak gosez gertatu ziranean? Jainkoaren etxean sartu eta, Jaunari eskeinitako ogiak hartuz, jan egin zituan, eta bere lagunei be emon eutsezan, legez abadeek bakarrik jan eikiezan ogiak izanik».

Eta esan eutsen: «Gizonaren Semea zapatuaren nagusi da».

Jaunak esana.